**Kondairaren mugetan**

Frantzisko Aldanondo


Fran Aldanondo, Ondarroan, 1977an, espetxetik atera berritan.

# Azken preso politikoa

Iñaki Egaña

«Apala, Larena, Txibite askatu!» oihukatzen zen Euskal Herriko kaleetan 1977an. Migel Anjel Apalategi ataundarra Marseillan espetxeratu zuten. Xabier Larena santurtziarra Burgosko epaiketan kondenatu zuten; Belgikatik Euskal Herrira itzulia zen, kanporatze agindua apurtuz. Eta FRAPeko Manuel Blanco Txibite donostiarrak heriotza zigorra saihestu zuen azken unean.

Martxoan, polimilien zuzendaritza Espainiako Gobernuarekin negoziatzen ari zen bitartean, Guardia Zibilak automobil bat gelditu zuen Itsason jarritako kontrol batean, Gipuzkoan: Ibarrako Sebas Goikoetxea eta Zaldibiako Nikolas Mendizabal 29 urte izan arren *Zaharra* esaten ziotena hil zituzten txapelokerrek. Hirugarren bidaiaria, Frantzisko Aldanondo, Martuteneko espetxera eraman zuten, arin zaurituta.

Egun batean, Apalategi desagertu egin zen Marseillako etxetik. Eta Larena eta Blanco Txibite presoak askatu egin zituzten. Frantzisko Aldanondok, ordea, kartzelan segitu zuen. 1977ko udan hura zen Euskal Herriko azken preso politikoa. 1977ko abenduaren 9an askatu zuten, haren abokatu Joan Kruz Unzurrunzagak azken paperak bete ondoren.

Ondarroan jaio zen Fran Aldanondo, 1949ko irailaren 7an. Itsasoak eraman zuen haren aita, 1952ko martxoan. Fran seme-alabetan bigarrena zen; arreba zaharrago bat zuen. Eta amak, hirugarrenaren esperoan egonik, egoerari aurre egin behar izan zion Ondarroan arrantzatutako arraina Markinako kaleetan salduz.

San Lucar de Barramedako Itsasoko Umezurtzen Eskola izan zuen Franek haurtzaroko aterpea, Espainiako Cadiz probintzian. Gerora, Madrilera joan zen, beste eskola batera, eta, azkenean, Maisutza Industriala ikasi zuen Arrasaten. Eta Ondarroara itzuli zen.

Gustuko zuen futbola, eta Aurrera taldean aritu zen. Hemeretzi urte zituela hasi zen lanean, kaian, eta geroago, Markinako Esperanza y Cia arma lantegian. Lau urte geroago, 1972an, ETAn sartu zen. Guardia Zibila hura atxilotzen saiatu zen 1975eko apirilaren 25ean, haren etxean, baina Franek etxeko leihotik ihes egin zuen.

Ipar Euskal Herrian ihesean zela, artean 1974ko zatiketaren ondoren ETApm-ra lerrotua, suma zitekeen gerora zuzendaritzaren eta *Berezien* artean izango zen liskarra. Aipatutako kontrolean Fran atxilotu egin zuten eta Martutenera bidali.

Donostiako kartzelan preso egon zen garaian, Fran buru-belarri aritu zen preso sozialei laguntzen, garai horretan COPEL koordinakundean antolatuak zirela. Borroka hori erabat barneratu zuen, eta protesta batean koilaratxo batzuk irentsi zituen eta hil artean barruan izan zituen.

Martuteneko espetxean Azkoitiko Frantzisko Xabier Larrañaga *Peru* preso politikoarekin harreman handia egin zuen, eta gero elkarrekin sartu ziren Komando Autonomo Antikapitalistetan. 1979an, Indotxinako soldadu ohi batek, Claude Maret izenekoak, Larrañaga hil zuen Hendaian. Gertaera ilun batean, Tomas Hernandez izeneko 1936ko gerrako iheslari bat desagertu zen. Eta oraindik ez dago haren arrastorik. Larrañagaren hilketaren lekuko izan ote zen?

1977ko martxoaren 11n atera zuten amnistia dekretuak urte hori baino lehenagoko auziei baino ez zien eragiten, eta, beraz, hainbat euskal preso kalera atera eta gero, Fran Aldanondo azken presoa izan zen garai batez. Herri guztietan kanpaina handiak egin ziren, bereziki Ondarroan, non greba orokorra egin zen azaroan.

Azkenean, esan bezala, abenduaren 8an askatu zuten. Atera bezain pronto, Franek oso hitz gogorrak esan zituen politikariez: «Zer itxaron dezakegu bada joko demokratikoa ezeren gainetik, are gure herriaren iraupenaren gainetik ere jartzen dutenez? Ezin dut ulertu nola hainbat gizon eta alderdik herri sahararren borroka defenditu eta loriatzen duten, eta gurea gaitzetsi. Agian, indarkeriaren kontzeptua klimaren arabera aldatzen delako izango da».

Fran Aldanondo komando autonomo batean sartu zen 1978ko erdialdera. Arrazoi ideologikoengatik baino gehiago, erabakia erakundearen funtzionamenduagatik hartu zuen.

## Franen heriotza

Guardia Zibilen tiroek hil zuten Fran, 1979ko urriaren 17an. Tolosatik hurbil topatu zuten, Izaskun auzuneko Maita Goikoa baserrian. Guardia Zibilak emandako agiri baten arabera, Aldanondo «ihes egiten saiatu zen leiho batetik ateraz, eta granada bat jaurti zuen, taldeko agente batzuk baserria miatzen ari zirela irrati-igorle ezkutu baten bila». Lekukoen bertsioa, alta, erabat ezberdina zen: «Hamabi eta erdiak aldera tiroketa handi bat entzun genuen, eta goialdetik gorpu bat amiltzen ikusi. Baserritik hurbileko belaze batean gelditu zen, artean bizirik. Behean geldititutako guardia zibil batek, hurbildu, eta tiro egin zion berriro». Fran Aldanondoren gorpuak hamabost bala zulo zituen, gehientsuenak bizkarraldean. Bi egun geroago, Ondarroak 1977an egin zion agurra errepikatu zuen. 1979ko ikurrinek dolu ikur beltzak zeramatzaten. Elizkizunetan, hilkutxa estaltzen zuen ikurrina kentzeko agindu zuen apaizak. Hala egin zen. Minutu batzuetara, neska eta mutil bat sartu eta beste ikurrin bat jarri zuten. Apaizak oso modu txarrean kendu eta bota egin zuen. Oraindik gogoratzen dute apaiz horren izena ondarroar askok.

> 77ko martxoan Guardia Zibilak automobil bat gelditu zuen Itsason: Ibarrako Sebas Goikoetxea eta Zaldibiako Nikolas Mendizabal hil zituen. Frantzisko Aldanondo Martuteneko espetxera eraman zuten, arin zaurituta.